## Sarrera-agurra

Ondo etorri, senideok, hildako gure senideak gogoratzeko ospatuko dogun esker onezko Eukaristia honetara.

Hareik gogoratuz, eta Jainkoaren altzoan sumatuz, bizitza betearen gure itxaropena birbiztu gura dogu, eta gure sinismena gaurkotu, sendotu, ospatu eta alkarbanatu.

Bizitzearen sorburu eta helburu dan Jainkoaren berbea entzunez argitu dakiguzala heriotzearen ilunpeak, eta haren Seme Jesukristoren eskeintzan indartu daigula gure bizitzea besteen alde emoteko gogoa. Jai-giroan eta itxaropen alaian ospatu daigun hildako gure senideen omenezko esker otoitz hau.

## Sarrera abestia

**R/.** B**iztu da Kristo, Aleluia. Guregan dago, Aleluia**.

*—Jainkoak dau-ta gaur Kristo biztu: Aleluia!*
*Bere indarrez biztuko gaitu: Aleluia, Aleluia. R/.*

*—Gure gorputza dau-ta egoitza: Aleluia!*
*Orain berekin gaitu bat egin: Aleluia, Aleluia. R/.*

*—Jaunari kanta, goresmen eman: Aleluia!*
*bai bihotz eta bai gorputzean; Aleluia, Aleluia. R/.*

## Damu-otoitza

—Jesus Jauna: hilen arteko lehen biztua, *erruki, Jauna*.
—Jesus Jauna: gure biztuera itxaropena, *Kristo, erruki*.
—Jesus Jauna: egia eta bizia zaituguna, *erruki, Jauna*.

## OTOITZA

Oi Jainko,
Zeuk bakarrik emon zeinke bizia heriotzaren ondoren;
askatu eizuz hildako gure senideak pekatu guztietatik;
Kristoren biztueran sinistu daben ezkero,
biztuera-egunean Zeugaz alkartu daitezala zoriontsu zeruan.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

***Hitzaren liturgiarako sarrera-oharra***

*Badagoz egoerak barruan isiltasuna eskatzen dabenak. Une horreetan litzateke gauza ona Jainkoaren hitza entzutea. Jainkoak ez dau nahi gure heriotzea, bizi izan gaitezala baino: eta bera da bizitz-iturria. Entzun deiogun, ba, eta otoitzez erantzun deiogun.*

**San Joan Apostoluaren lehenengo gutunetik** (1 Jn 3, 1-3)

Seme-alaba maiteok: Begira zenbaterainoko maitasuna agertu deuskun Aitak, Jainkoaren seme-alaba izena daroagu-eta, baita izana ere. Hona zergaitik munduak ez gaituan ezagutzen: Aita ere ezagutu ez ebalako. Ene maiteok, orain Jainkoaren seme-alaba gara; gero izango gareana oraindino ez da agertu. Badakigu, Kristo agertu daitenean, beraren antzeko izango gareala, dan lakoa ikusiko dogu-eta. Haregan itxaropen hau daben guztiek garbitu egiten dabe euren burua, Ha garbia dan lez.

Jaunak esana

**ERANTZUN SALMOA** Sal 26, 1.4.13-14

**R/ JAUNA DOT ARGI ETA SALBAMEN**

Jauna dot argi e*ta* salbamen,
nork *ni* bildurtu?
Jauna bizi*a*ren babes,
nork *ni* izutu? **R/.**
Gauza bat deutsot eskatzen Jaunari, /
horren bi*la* nabil ni;
bizi nadila Jaunaren etxean, /
neure bizitzako egun *guz*tietan;
Jaunaren samurtasuna go*za*tu daidan,
haren jauretxea begiz i*ku*si daidan. **R/.**

Jaunaren ontasuna ikusi ustean nago bizi*en* lurrean.
Itxaron Jaunagan eta a*do*re izan,
bizkortu beki*zu* bihotza,
eta itxa*ron* Jaunagan. **R/.**

**R/. Aleluia.**

**V/.** Zorionekoak aurrerantzean Jaunagaz bat eginik hiltzen diranak;
atseden hartuko dabe euren nekeetatik,
lagun dabez-eta euren egintza onak. **R/.**

**EBANJELIOA**

*Semeagan sinisten dauanak betiko bizia dau,*
*eta Neuk biztuko dot azken egunean.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 6, 37-40

Aldi, haretan esan eutson Jesusek jenteari: Aitak Niri emoten deustan guztia Neugana etorriko da,

eta Nigana etortzen danik ez dot kanpora botako, ze, ez naz zerutik jatsi neure nahia egitera, bialdu nauanaren nahia baino.

Eta hauxe da bialdu nauanaren nahia: berak emon deustan guztitik, ez dagidala ezer be galdu, ezpada ze, biztu dagidala azken egunean. Hauxe da nire Aitaren nahia: Semea ikusi eta harengan sinisten dauanak izan dagiala betiko bizitza; eta Neuk biztuko dot azken egunean».

Jaunak esana.

**ESKARIAK**

† Gure uste ona Jainkoaren errukian jarriz zuzendu deioguzan eskariok behartsu guztiak gogoan izanik:

—Eleizearen alde: aldenduekaz hurreko agertu daiten, eta baita sufritzen dagozanekaz eta sinismena galdu dabenekaz ere, bila ibiliz aurkitzen ez dabenekaz ere bai, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Jainkoaren errukiak bere altzoan izan daizan hildako gure senideak, eta hareik omentzen doguzanoi adore emon deigun eta esker onezko bizitza eroateko lagun egin, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Gizarte hobe bat indarkeriaz eraiki gura dabenen alde: izan daien gogoan benetako eraikuntza alkarrizketeaz, alkarren ardureaz eta zuzentasunaz lortzen dala, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Gure senideei agur egiteko otoitzean alkartzen garanon alde: biztueran dogun sinismena haren testigu izanik agertu daigun gure erruki egintzetan, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

† Maitasun eta errukiz beteriko Jainkoa: emoiguzu esker oneko bihotza, bizitzearen Jainko lez emon

zaiguzan ezagutzera. Jesukristo.

—Amen.

## Oparien gainekoa

Jainko ahalguztidun errukitsua,
sakrifizio honetan eskeintzen dan Kristoren odolaz
kendu eizuz hildako zure zerbitzarien pekatuak,
eta egizu, zure bihotz onak egin daizala gero eta garbiago
Bateoko uretan garbitu zenduzanok.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

## Prefazioa

V/. Jauna zuekin. R/. Eta zure espirituarekin.
V/. Gora bihotzak. R/. Jaunagan daukaguz.
V/. Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari. R/. Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

Bera da munduaren salbamena,
gizon-emakume guztien bizia
eta hilen biztuera.

Honen bitartez, zure handitasuna autortzen dau aingeruen taldeak,
beti pozez alkarturik zure aurrean.

Onartu egizu, Jauna,

euren gorespenekin bat egin daiguzala geuk ere
geure kantu-hotsak:

**Santu, Santu, Santua**...

## II. EUKARISTI OTOITZA

**Santu zara**, bai, Jauna,
eta santutasun guztiaren iturri;
egizuz, bada, santu ogi-ardao honeek,
zeure Espiritua isuriz,
Jesu Kristo gure Jaunaren Gorputz eta † Odol
egin daitezan guretzat.

**Berak**, saldu ebenean
eta bere gogoz kurutzera joiala,
ogia hartu eta, eskerrak emonez,
zatitu eban eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

**Era berean**, afalondoan,
kaliza harturik,
barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**V/. Hau da sinismenaren misterioa**.

**R/.** Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte,

hau dogu, hau, barri ona!

**Horregaitik**, Jauna,
zure Semearen heriotza eta biztuera gogoratuz,
biziaren ogia eta salbamenaren kaliza
eskeintzen deutsuguz,
Zuri eskerrak emonez,
altaran zeure zerbitzari onartu gaituzulako.

**Eta apalik** eskatzen deutsugu,
Kristoren Gorputza eta Odola hartzen ditugunok
Espiritu Santuak bat egin gaizala.

**Izan gogoan**, Jauna,
mundu guztian zabaldurik dagoan zeure Eleizea;
eroaizu maitasun osora,
Frantzisko gure Aita Santuarekin,
Joseba gure Gotzainarekin,
~~*(I. Gotzain Laguntzailearekin,)*~~
eta eleiz-gizon (-emakume) guztiekin batean.

**Era berean**, izan gogoan, Jauna,
gaur mundu honetatik zeugana eroan dozuzan
**auzo honetako** zure zerbitzariak;
zure Semearekin bat egin diranok
biztueran ere berarekin bat izan daitezala.

**Baita izan** gogoan, Jauna,
bizteko itxaropenean joan diran gure senideak
eta hildako guztiak ere;
hartu egizuz zeure aurpegiaren argitan.

**Erruki zakiguz**, arren,
guk guztiok betiko bizitza jaritsi daigun,
Jainkoaren Ama Maria Birjina dohatsuarekin,
haren senar Jose santuarekin,
Apostolu eta martiri santuekin

eta, gizaldi guztietan,
zure adiskide izan diran santuekin;
eurekin batera goratu zaiguzan,
Jesu Kristo zure Semearen bitartez.

HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN,
ZURI, JAINKO AITA AHALGUZTIDUN HORRI,
ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN,
OSPE ETA AINTZA GUZTIA
GIZALDI ETA GIZALDI GUZTIETAN.

**Amen.**

† Salbatzaileak agindu eta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik, emoiguzu bakea gure egunotan, zure errukiari esker pekatutik garbi bizi izan gaitezan eta estualdietan sendo; betiko zorionaren itxaropenean Jesukristo gure Salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozela.

—Zeurea dozu erregetza; zeureak ospe ta indarra orain eta beti.

† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei ‘bakea

izten deutsuet, neure bakea emoten'; begira zure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa danez, emoiozu Eleizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.

—Amen.

† Jaunaren bakea beti zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

† Emon deiogun bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: Erruki, Jauna.
… emoiguzu bakea.

Gizadiak, maite mina. / Izadiak arreta-mina
Etorkinak herri-mina. / Herri honek bake-mina.
Laborari ta langile / sinestedun ta bilatzaile
bidez-bide, kalez-kale / izan gaiten bake-egile.

**Jaunartzea**

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:

—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

## Jaunartzean

**R/. Gogoratu Jesukristo hil artetik biztua**
**sekulako gure indar eta salbamendua.**

1 *Zurekin bagara gu hilten, zurekin gara biziko;*
*zurekin badogu sufritzen, zurekin, Jaun eta Jainko.* ***R/.***

2 *Zuregan gaitzak eta minak, zuregan poz-atseginak;*
*zuregan bihotzen geroa, zuregan amodioa.* ***R/.***

**Jaunartze ondorengoa**

Gugaitik hil eta aintzaz biztu zan
zure Semearen sakramentua harturik,
apalik eskatzen deutsugu, Jauna, gure senide hilen alde:
Kristoren pazko-misterioan garbiturik,
lortu daiela biztuera-egunean zorion betea.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**Azkenean**

Ospatu dogun Eukaristiak alkartzeko indarra dau, haren inguruan batu garanok alkarregaz ez eze, bizitzearen betetasunean diranekaz ere alkartzeko indarra. Indar horren ardatza Jesukristoren eskeintza da, geure buruaren eskeintzara garoazana. Izan daigun, ba, gogoan, geure burua besteen alde eskeiniz garala alkartze-indar, eta horixe izan daigula egun baten Jainkoaren zorionean izango garanaren itxaropen.



Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta



beti guk Zuri eskerrak e-mo-te - a, Jauna, Aita guz-tiz san - tu,



Jainko ahalguztidun betiko ho-rri, Jesu Kristo gure Jau-na-ren



bi-tar-tez. Be-ra da munduaren sal - ba-me-na, gizon–emakume



guztien bi - zi - a e - ta hi - len biz - tu - e - ra.



Honen bitar-tez, zure handitasuna autortzen dau aingeruen tal-de-ak,



beti po-zez alkarturik zure au-rre-an. Onartu egi-zu, Jau-na, euren gores-



penekin bat egin daiguzala geuk e - re geu-re kan -tu –ho-tsak:

# BESTE ABESTI BATZUK

Kristoganik zerk urrun nork berex gu ?
Jainko dugu: gu baitan da bizi.
Dugularik lan, gudu, gaitz eta min,
Kristorekin lur huntan zerk izi ?

**Ikusten dut zerua zabaldua:**
**Han behar dut egun batez sartu.**
**Bai, Kristok du mundua garraitua:**
**Zeruraino eremanen gaitu.**

Mundukoen zaintzale gurekin da:
Hari galda goi argi, goi indar.
Haren argi dirdiran, bat gaiten joan:
Ilunbetan gaitzeri gaur oldar.

Odoletan da Kristo gu maitez hil,
Gaiten ibil kar pizten gu ere.
Jautsia zen sor zadin lurrean su :
Goazen kartsu lurrez-lur sutzaile.

**R/. Jauna dot Artzain, ez dot izango nik goserik;**
**hark emongo deust zer-jan onik.**

1 *Neu naz zerutik lurrera jatsi dan ogia*
*Aitak danori eskeinia.*
2 *Nire gorputza egiz dozue janaria*
*ta nire odola edaria.*
3 *Ogi hau jaten dauana beti da biziko,*
*hilterik ez dau ikusiko.*

**R/. Kristo bizi da, bizi, lehen, orain, beti**.

1 *Hilen artetik jaku Kristo barriz biztu,*
*lotan daozenetatik lehen bizi-fruitu.*
*Berak heriotzea, biztuz, dau garaitu.*

2 *Hilen artetik jaku Kristo barriz biztu*
*eta heriotzea, biztuz, desegin du.*
*Non dok, Heriotzea, hire garaitzea?*